

Xabier Aranburu

*Aurrera nekez egiten baitu*
*herdoildutako orratzak...*

Xabier Aranburu 'Xomorroren' bertso-bilduma hau Usurbilgo Etxerat-ek, Bota Punttuba bertso eskolak eta Noaua! elkarteak elkarlanean argitaratutakoa da, Usurbilgo udalaren laguntzarekin.

Liburua apaintzeko, besteren artean, Karlos Zabala 'Arrastalu' eta Amaia Kasasolak egindako zeramikak eta han-hemenka hartutako irudi edo argazkiak erabili dira.

Garazi Zubimendik transkribatu ditu bertso gehienak. Euskara orrazketan Edorta Agirre aritu da eta Intza Salsamendi arduratu da liburuaren azalaz eta maketazioaz.

Eskerrak guztioi.

2006ko abendua

## AITZIN SOLASA

Aukera ederra eskaini didate 'Xomorroren' bertso lanari buruz nire iritzia plazaratzeko. Burkide eta lagun dudan aldetik, horrelako aukera eder bati ezin uko egin, are gutxiago azken urteetan gu biok lubaki berdinean borrokatu izan dugunean.

Bere lanaren zati handi baten ezagutza badut nahiz eta beste zati bat ezagutzeko paradarik ez dudan izan. Ezagutzen dudan hartatik azalduko dut, beraz, nire ikuspena.

**XOMORRO, BERTSO JARTZAILE ETA OLERKI IDAZLE**

Xomorroren bertso hazia kartzelako zoko umel eta ilunetan ernatu denez, hazi horren loreak badu kartzelako lurrina eta samina. Horixe da dotorezia handiz jantzitako bertsoetan erakusten diguna. Bertso ale bakoitza landua eta mimatua da; bertsoaren puntu bakoitza aurrekoarekin eta ondorengoarekin ongi uztartuak dira, bertsoa koherentziaz eta zentsuz osatu arte. Ildo berean, bertso sorta osoari koherentzia bera ematen dio, bertso batetik besterako urratsak ondo mailakatuz. Horrela, batetik besterako urratsean ildoaren haustura eman ez dadin, bertso sorta bera narrazio eder bat bilakatzen da.

Bada bestelako joerarik aginagarraren bertsoetan: Hitz-jokoaren bitartez eta euskara aberatsa baliatuta, bertsoa irudikatu egiten digu, arnasa eta mugimendua ematen dio, koloretako argazki bilakatu arte.

Bertsoak, ordea, baditu bere legeak, metrika, errima... hitza lege horietara mugatzen dutenak. Muga horietatik askatzearren olerkirako urratsak ere eman ditu Xomorrok. Oraindik alor horretan asko ezagutzen ez badugu ere, erranen nuke freskura eta mugimendu handiz adierazten duela alor horretan, olerkia bera mami handiz hornitu arte.

Bere lana gihartsua da, apenas koipe askorik duen; erran nahi baita betelanik ez duela. Hitzari bizia ematen dio, bide horretatik lan ederra eskainiz irakurleari.

Bertsoaren putzu sakonean aurkituko du irakurleak arestian aipatu kartzelaren lurrin eta samina. Bertso jartzailea gatibu dago lau pareten artean, ez ordea bere izpiritua, eta kanporako joera hori ederki adierazten digu bere lanak.

Irakurle eta bertsozaleak gozatu dezala lan honekin, eta hiri Xomorro nire goraintzi eta besarkada maitakorrenarekin batera, "agindutxo" bat: jarrai ezak bertsoak eta olerkia lantzen, ez duk lehen aldia gomendio hau eman niala eta horrela izan bedi.

*'Pana'*

**Hamabost urte! Erraz esaten da...**

Hamabost urte *"Ongi etorri"* zure etxetik falta zarela. Hamabost urte bertakoek, maitasunak ematen duen kemenarekin eta hamaika kezkei aurre eginez, zurekiko lokarria eusten dutela.

Beste hainbeste urte, batzuetan haserre, besteetan triste, baina beti harro, zuri eta gainerako euskal presoei dagozkizuen eskubideak kalean, erakundeetan, hondartzetan, elizetan, errepideetan... aldarrikatzen.

Zenbat bider ez ote diogu gure buruari esan: noiz arte? Eta segituan erantzun: behar izango den arte! "Ongi etorri"ra itzuli arte.

Eta orduan, a zer ongi-etorria!

*Usurbilgo 'Etxerat'*

---



Hamabost urte igaro dira San Esteban auzoan Bota Punttuba bertso eskolako kideek bat bateko bertso saio batean parte hartu genuenetik. Abuztuaren 4an, San Esteban hurrengo egunean, "Xomorro" tartean genuelarik, bere lehendabiziko bat bateko bertsoak jende aurrean abestera ausartu zen. Horrela zioen eskaini zigun lehen bertsoak:

*Ezin kejatu gerade behintzat*
*fansak ditugu ekarri.*
*Entzuleak hor lasai exeita*
*zaudete bertso egarri.*
*Lehenengo aldiz igotzen naiz ta*
*nago estu eta larri*
*arratsalde on bat pasa dezagun*
*guztioi ongi etorri.*

Lehenengo aldiz igotzen zela oholtzara berak esan zigunez eta, gaur arte, azkena ere bai, hamabost egunetara atxilotua izan baitzen.

Gogoan dut nolakoa zen Xomorro elkartzen ginenean eta nolakoa zen bere bertso jarioa. Ikasketa asko gabekoa baina etorri handikoa. Gure arteko saioetan pazientzi gutxikoa. Hori diot guk bertsoak pentsatzerako, bera segituan hasten zelako kantuan eta sarritan gertatzen zitzaigun guk bertso bat botatzerako, berak hiru edo lau erreskadan botatzea. Bestalde, umoretsua genuen, beti farrez eta alaitasunez, bertso bakoitzean ziria noiz sartuko.

Gerora, espetxera egindako bisitetan gehiago ezagutzeko aukera paregabea izan dudanez, argi daukat kartzela izan dela bere unibertsitatea. Kantuan ezin guri bertsorik eskaini eta paperean helarazten dizkigu. Maila eta aberastasun handia lortu du, bere bertsoak irakurrita ikus genezakeen moduan.

Ezin dezaket amaitu liburuxka honetarako oparitu dizkigun bertso hauengatik eskerrak eman gabe eta, nola ez, berriro ere elkarrekin bertsoz gozatu eta zirikatzeko, gure artean aske noiz izango dugun zain gaudela esan gabe.

*Bota Punttuba taldeko lagun bat*

## ATALAK:


• Santixabel bertsopaper lehiaketak .........09

• San Praixkuak .............................29

• Espetxea, gudariak... ......................43

• Lagunei ...................................61

• Ilargia ...................................75

• Euskara eta kultura .......................79

• Aginaga ...................................83

• Olerkiak ..................................89

## 2002ko SANTIXABEL BERTSOPAPER LEHIAKETA. 3. SARIA

Gaia: Ziegatik ilargiarekin solasean. Doinua: Zortziko nagusia

1
Gauaren erdin noraezean
hortxe genbiltzan gu, antza;
gainetik ezin kendurik nonbait
bakardadearen arantza.
Keinu batzuek trukatu eta
akabo gure zalantza:
orain gauero gabiltza bapo
indartuaz esperantza

2
Zeinen ederra hagon, ilargi,
zeru urdinaren plazan;
milaka izar lagun hartuta
hasi berria haiz dantzan.
Ni inbiritan jarri naun eta
gehiago ezin dinat jasan:
penak pitin bat arindutzeko
besotan kulunka nazan.

3
Azkenaldian bizkar gainean
zigor askoren demasa;
eguna joan, eguna etorri,
bakardadearen jasa.
Giro itoak ito baino lehen
eman iezadan arnasa:
gau sorgindua gurea dun ta
egin dezagun gaupasa.

4
Sorgindutako zeru erdian
begi bateko kriseilu;
gau gordinean erdi biluzik,
ederra bezain kankailu.
Azken urtetan bihurtu gaitun
elkarrekiko jostailu.
Ai!! Amandrea, zelataria,
maitasunaren ispilu.



5
Zigor-ziega tipi honetan
askatasuna da urri;
segundoero kolpatzen nauen
ilunpearen izurri.
Hik dakarkidan poz ta lilura
jolasti eta bihurri:
beti izan haiz pagano honen
inspirazio iturri.

6
Ortze erdian altxor bat legez,
zeinen panpox ta limuri!
Borobiltasun lilurakorrak
haurdun hagola iduri.
Altzoa eskaini didan askotan
Ta nik malkoak isuri;
nire begiek ikusten haute
askatasunaren zubi.

7
Horra ilargia eztiki-eztiki
dotore asko hurbildu;
ziega zurbil eta ziztrina
argi batean dun bildu.
Uzkurturikan nuen bihotza
loretxo bat lez, zabaldu;
poztasunaren errekan biok
egin gerade murgildu

8
Hi haiz enetzat ametsetako
bihotza eta ahoa;
erakarpenen iturburua
eta gaueko garoa.
Keinu aldiro jaurtikitako
ostadarraren agoa.
Gaurik beltzena argitzen duen
fantasien arragoa



## 2003ko SANTIXABEL BERTSOPAPER LEHIAKETA. LEHEN SARIA.

Doinua: Leiho ertzetik

1
Isolamendu-bakardadean
nago larri eta estu,
lau hormatzarren besarkada hotzak
sarrera ez dit erraztu;
isiltasuna garrasika dut,
ta kopeta nola ez beztu?
Itxura onikan eztu
giroa baita laineztu. (bis)
Kartzelarien erasoetatik
nork egingo nau babestu?
Nire burua eta bihotza
egon daitezela prestu. (bis)

2
Galerietan zein arrabotsa!
Arrapaladan pausoa,
miaketaren aitzakipean
azaldu tropel osoa;
hormaren kontra jarri naute-ta
ez dago giro goxoa;
tentsioaren lazoa
ezta batere erosoa. (bis)
Dena hankaz gora utzi ondoren
esanguratsua soa
Kontura nadin nagon lekua
ez dela paradisoa (bis)

3
Hemen orduak ez dira izaten
lasterketako urratsak,
aurrera nekez egiten baitu
herdoildutako orratzak;
begi-zulotan itsasten dira
akiduraren lorratzak;
geldotasunaren hatzak
txit estutzen dizkit galtzak. (bis)
Zenbat denbora upel beretik
edanez trago garratzak!
Nahi baino lehen ez dira etortzen
amestutako arratsak. (bis)

4
Askatasuna kaiola baten
neurrira nahi dute eta
eguneroko jakia dugu
eskubide zapalketa.
Seguritate neurrik aitzakia,
noiznahi dago miaketa.
Egurraren errezeta,
gainera trufa ta iseka. (bis)
Kalbario hau jasan beharra
ez dugu, ez, berriketa,
kartzela bera bihurtu dute
sufrimenduaren meka. (bis)

5
Gutxien uste dugun unean
dator tristuraren zama;
estualdiak trumoien antzo
lehertutzera narama.
Begiak malkoz blaiturik ditut
negarrari nago emana:
askatu behar dut dana,
bihurtu ez dadin drama. [bis]
Zenbait unetan oreka aurkitzen
izaten da nahiko lana.
Horrelakotan gogoan zaitut
nere bihotzeko ama. [bis]

6
Txarrantxaz eta harresitzarrez
josirik dute kartzela;
barne-araua oso zorrotza:
ezin zitekeen bestela.
Justizi eza iraultzekotan
hautsi behar erregela;
borroka da gure gerla
duintasuna, berriz, perla. [bis]
Sufrimendua ekarri arren
ziur egin behar dela.
Hondora ez dadin bihotz barneko
esperantzaren batela. [bis]

7
Itomenaren zirrikitua,
arnasa hartzeko adina.
Iratzarturik amestutzeak
dakar bizi-ahalegina;
irudimena hegaldatzen da
atzean utziz samina;
bizi-pozaren lagina,
bihotzeko krabelina. (bis)
Izar artean zein distiratsu
keinuka ilargi sorgina!
Bere altzoan eramaten nau
ia gauero Agiña. (bis)

8
Euskal Herrira zuzenduz doa
azken bertsoaren soka.
Atxiloketak, torturak eta...
atea egunero joka.
Euskaldun oro legez kanpora;
inkisidoreak bota
zigor legeen porrota.
Nola gaituzten gorrota! (bis)
Bolada latzak pasatu arren
batzutan alboka-alboka.
Euskal Herrian aurrera doa
askapenaren borroka. (bis)

## 2004ko SANTIXABEL BERTSOPAPER LEHIAKETA.
## 4. SARIA

Gaia: Zure gatibu gatibutzan

1
Maitasunaren lorategian
huntzaren gisa itsatsi;
bazter-txokoak bapo miatuz
gogoz kiribiltzen hasi.
Urtea joan, urtea etorri,
izugarrizkoa hazi;
arnasketa galarazi
liluratzekoa kasi. (bis)
Bihotz taupadak arrapaladan
dabiltza estasiz-estasi.
Sentimenduek hormen artetik
pozez dagite garrasi (bis)

2
Izar arteko ilargiari
ziegatik so bekaizti:
gaueko dama disdiratsuak
oroimen onak dakarzki
Ai!, hamaika gau ahaztezinak
bere abardan edoski:
akelarretan preseski,
bilutsik eta solasti, (bis)
su-inguruko festa algaran
zu izan zinen, egiazki,
gatibaturik utzi ninduen
egunsentiko eguzki. (bis)

3
Bisitan aurrez daukagun arren
betiko kristal zikoitza,
ilusiotan aberats dabil
gure soaldi bakoitza.
Zurekin dantzan ibili nahi-ta
dantzan ibiltzen zait hitza.
Irrifarretan losintxa,
harmonian aldiz ditxa. (bis)
Txoraturikan nadukazunez
ahotikan darit bitsa;
ostadarraren iturritikan
edanez nabil bizitza

4
Itsaslapurrek bilatu duten
altxorra adina balios
dira enetzat zure eskutitzak
diotsut malkotan itoz.
Zure eskutan hitz laua bera
poesia da betikoz,
leitzen ditut bozkarioz
ta sentitzen naiz lorios; (bis)
boligrafoa erabiltzezu
neurrigabeko amodioz.
Begietatik sartuak zaizkit
letra guziak pasioz. (bis)

5
Argazkietan agertzen zara
ederra eta panpoxa,
soineko luze zuri-gardenez
begi berdedun jainkosa;
musu gorriak, ezpain guriak,
eperra bezain airosa;
bor-borka darizu poza
zoriontasunez goza. (bis)
Begirik kendu ezinik nabil
udaberriko larrosa:
zu kontenplatzen egote hutsez
urtzen didazu bihotza (bis)

6
Pentsamendua eta gogoa
zugana doazkit hegan;
zure opari zoragarriez
josirik dudan ziegan;
sineskaitza da zein eragina
izaten duten niregan,
ze estimua diedan;
bihotza din-dan, boleran. (bis)
Orainaldia sendatzen dute
sendabelarraren eran.
Etorkizuna eskuan jarriz
Bertatik dezadan edan. (bis)

7
Gau sorginduak bere altzoan
murgildu nau ametsetan.
Non besoetan hartu zaitudan
limurtzeko desiretan.
Muxu eztiak pausatu dira
emeki-emeki ezpainetan,
hitz xamurrenak loretan,
zentzumen oro olgetan. [bis]
Zangalatraban izerdi patsez,
mozkorturik laztanetan,
Arnasestuen hotsa nagusi
maitasunaren errekan. [bis]

8
Zure ausentziak besarkatu nau
esanez hemen zaudela:
zein korapilo, zein igurtzia,
zein sentsazio epela!
Seguruenik hilko nintzake
penaren penaz bestela.
Ene bihotzeko perla:
maitasuna gure gerla. [bis]
Urruntasuna bilakatu da
deabru zital itzela.
Gogoan izan: maitatzen zaitut
gauak izarrak bezela [bis]

## 2005eko SANTIXABEL BERTSOPAPER LEHIAKETA. LEHEN SARIA.

Gaia: Naufragoaren agoniaren balada. Doinua: Habanera

1

Atun arrantzan daramat
ia arratsa osoa;
bizkor porturatzea da
nire hurrengo pausoa.
Orain arte egon arren
eguraldi txit jasoa,
zelatan dagon enbatak
ez du aurpegi gozoa.
Berandu ikusi diot
amarruaren lazoa:
bat-batean lehertu da
izugarrizko erasoa.
euri ta haize zakarrez
astindurik itsasoa,
infernua bilakatuz
lehen zen paradisoa.

2

Hil edo bizikoa da
aurrean dudan borroka
eta izuak akabatzen
nagoela ezin uka;
heriosuharrak jota,
bihotza arnas-estuka,
ekaitz zital alaenak
paralizaturik nauka;
itsasoaren ahoan
txaluparekin, zabuka,
lau metroko olatuen
hatzaparretan, bihurka;
ura edonondik sartzen da,
hondoratzear txalupa;
intxaur oskol bat bezala
kolpetik gaitu zurrupa.



3
Ziplo hondoratu gaitu
itsas handiaren bortxak;
ta segundoak ez dira
batere egiten motzak
dantza makabro honetan.
Ai, zenbat trago mingotsak!
Itolarriaren suak
laster kentzen ditu hotzak.
Ur-azalera etorrita
arnasa-hartze zorrotzak
indarrak eskuratuta,
tinko, erakusteko hortzak,
biziaren hariari
helduta, buru-bihotzak:
alferrik jarraitu dezan
ate-joka heriotzak.

4
Ekaitzaren haserreak
azkenean jo du muga,
gorriak ikusi ditut
asto beltzaren modura;
gutxi falta izan zaio
bidal-nintzan infernura,
baina baretzen joan da
negua bihurtuz uda.
Une horretan askatu
zaidan barrengo estura,
sentimenduen eltzean
negar batean hustu da,
begirada zuzendurik
urdindutako zerura:
horretxek ekarri baitit
itxaropena eskura.

5
Txalupari atxikirik,
itsasoaren esklabo,
gauak bere oihal beltza
zabaldua du emaro;
zeru izartsuari so
animatu naiz zeharo,
ilargiari bertsoak
errezitatuz oparo;
baina ahuldadea lagun
ezin segitu luzaro:
gorputza nekatu eta
burua nekatuago.
Etengabeko kulunkan
lo hartu ez hartu nago;
hala gertatuko balitz
Orduantxe bai akabo!!

6
Itsasoaren sehaskan
batera eta bestera,
noraezean dabilen
erromesaren antzera.
Pentsamenduak doazkit
behin ta berriro etxera,
abisurik eman gabe
etorri bainaiz honera.
Axolagabekeriak:
horra nolako galera!
Damuaren haginkadez
nere bihotza bete da;
amorrazioak ez dit
irauliko egoera:
aurretik behar nituen
kontuak garbi atera.

7
Trapu zahar bat dirudit,
hainbeste ordu jitoan;
burua altxa ezinik,
a ze trantzean nagoan!
Ur gaziz inguraturik,
egarriak ia itoan,
mingaina espartzu lehor,
aparra ezpain ondoan;
hotza hezurretaraino
sarturik dut luzaroan;
hipotermiaren harrak
hozkaka erraien hondoan
Gorputza gogorturikan,
obsesio bat kolkoan:
"Nire bila etorriko
ote dirade behingoan".

8
Jotake ariko dira
bilaketan beharbada
baina argirik ez dator
gandututako bistara.
Justu-justu entzuten dut
itsasoaren marmara
zeinak ezabatzen duen
esperantzaren uhara.
Etsipenaren zuloan
ilunagoa zait gaba;
azkenetan nagoela
pentsatzeari ezin laga;
taupada hits lotsatiaz
bihotza joka aldaba:
"Larru bizian dagoen
agoniaren balada".



## 2006ko SANTIXABEL BERTSO-PAPEREN LEHIAKETA. LEHEN SARIA

Gaia: Sagarrondotik dator sagardoa

1

Sagarrondoaren soina
dotore udaberritu
adarretan hosto obalak
lore zuriz erne ditu.
Eguraldia xurgatuz
koxkorrak zaizkio gehitu
haize, euri eta eguzkiaz
egiten baitira hornitu.
Denboraren poderioz
adarrak dira uztaitu
zamaren zamaz sagarrak
ezin direla kabitu.
Helduenak lurreratuz
sagarrondoa erditu
bekatuaren fruitua
jan gabe ez gaitezen gelditu.

2

Sagarrondoen orpoak
daude sagarrez beteta
eta baserritarrak prest
dira egiteko bilketa
egitekoari jarriz
berebiziko arreta
esperientzia lagun
bihurtu zaie olgeta
sagarrek galdu ez dezaten
kalitatea kolpeka
kizkiaz egin diete
ziztada baten fereka
ardura handiz uzteko
zakutan ongi gordeta
sagardoa egiteko
lehengaia dira eta.

3
Sagar garbi ederrekin
kirikoketa hasi da
mazoen golpe lehorrez
txirtxilaturik neurrira.
Guztiz desitxuraturik
eta galdurik distira
sofrimenduaren sokak
jada ezin ditzake libra
tolare bihozgabeak
hartua baitu segida
sagarren bihotz-arimak
tinko estutuaz di-da
patsa ondo xehatu arte
ez du izango gupida
mama gozoa negarrez
txorrotean ageri da.

4
Muztioa txorrotadan
badoa kupelarantza
lau-bost hilabeterako
errespetuz usantza.
Kupelaren besoetan
etzaio faltako dantza
soinean izango baitu
hartziduraren arantza.
Bi irakinaldirekin
datorkio akabantza
jada ondo gorpuzturik
joana zaio balantza
usain eta zaporeak
baieztatzen dute, antza
sagardo bikain-bikaina
izango den segurantza.

5
Txotx garaiak dizu arindu
kupeleko martiritza
ilunpeko zoritxarra
bihurtu baitizu ditxa.
Ireki dizutenian
askatasunaren giltza
ikustekoa zen zure
abiadura bortitza
baso ertzean lehertuz
ospatzen duzu garaitza
txinparta darizularik
kabitu ezinik zabiltza
bihotzak dantzan jarriaz
jolas ederrean hitza
zu gabe ai ze tristea
litzatekeen bizitza.

6
Txot bolada pasa arren
sortzen darraizu lilura
usain eta zaporeak
jo dizutelako muga
bospasei gradu artean
ereduaren modura
botilaratu zaituzte
eramanez merkatura.
Iaz Madrilgo perian
eduki zenun mentura
aurten aldiz Katalunian
sustatuz euskal kultura
kalitatea jarriaz
bezeroaren eskura
gure arbasoen sustraiak
zabal ditzazun mundura.

7
Sagardo eguna zela
ezin inolaz ahaztu
kolore ederrarekin
botilan zeunden han justu
kortxoa askatuz gero
edozertarako prestu
lotsa gutxikin baitzinen
baso batean biluztu
eskuan goxo hartuta
tragoan zintudan hustu
hura zen hura zirrara
gorputz osoan ze gustu
probatu izan ez bazintut
ezingo nuen sinistu
bihotzean baitzenidan
maitasun argia piztu.

8
Zurekiko maitasuna
sutsu dezadan seinala
izan baita hogeitabost
urteko ezkontza formala.
Zintzoa izan natzaizu
fidela eta leiala
noizbait harrapatu arren
mozkor bihurri petrala
harro diotsut oraindik
hauxe gertatzen zaidala
maitekiro zu basotik
neurrian edan ahala
pasioaren sugarra
etortzen zait berehala
zure ezagutza egin
nuen unean bezala.



## SAN PRAIXKUTAKO JAIAK

1995

1
Herritik kanpo kartzelatua
lau urte dira iadanik
eta gazteek ez naute ezautzen
karteletan izan ezik;
nitaz zertxobait jakin dezaten
horra hiru bertso hemendik,
horman itsatsita egonik
ez da ezagutzen gizonik.
Kartel horietan nire izaera
ez da agertzen inondik,
Ezta're edozein gazte bihurri
bezalakoa naizenik

2
Txiki-txikitan gogoan daukat
oso bihurri nintzala,
eskolan ere ibili nintzen
bezte gazteak bezala:
don Joxe Ramon, Balentina ta
maixtra xaharra jefe zala...
hori guztia nahiko ez zala,
eskolan apaiz itzala
estremauziorako, ezinbestez,
norbaiten beharra zuala:
"Hik hemen ez dek gauz onik
eiten, goazen" esaten zidala.



3
Errekreotan eiten genduna
nahi dizuet adierazi.
Kirol mota asko, garai haietan
genituenak ikasi:
txorro-morro ta piko-tallo-ke,
joko polita, lehenbizi;
soka saltuan e'hasi...
ez nun egiten itsusi;
halare baloi eta pelota,
biak ziraden nagusi,
harrapaketan ta gordeketan
gustora ginaden bizi.

## 1997 (Euskal Presoak Euskal Herrira!)

1
Dispertsioa izanik
gaztigu urrundanik,
familia da sofritzen duna
hain urrun egonik;
hemen ez da gauza onik,
bihotzez diotzuet gaur nik:
"Euskal Presoak Euskal Herrira!"
aldarri gaurdanik.

2
San Praxkuko iturritik
edan zazute gogotik,
euskaraz mintzaz une guztian
barru ta kanpotik.
Trikitixaren hotsetik,
panderuaren kolpetik,
dantzari ederrik izango da ta
Agiña aldetik.

1

Oilasko biltze usadioa
sustrai sendoko arbola,
gure zaharrek belaunez belaun
irakatsitako eskola;
iazko etena ez bedi izan
gainbeheraren oskola:
ea, gazteak, ohar zaitezte
jarraitu beharra dagola!

2

San Praixku jaien egarri
nagola ez al da igarri?
Urtero agertzen zaidan harraren
adierazgarri
Hauxe ez da gauza berri,
nahiz denbora pasa larri;
besterik ezpa sagardo pixkat
honuntza ekarri.



1

Txalapartaren "ttakun" soinua
Agiña osoan aditu;
aginatarrak jaiki dirade
pozarren ezin kabitu.
Sutagar ibil, egunez eta
jotake gauez aritu;
San Praixku jaiak sorginkeriak
bere erraietan ditu.

2

Txoritxo batek belarri ertzera
hona esandakoa neri:
"Frontoia gora, frontoia behera,
bada nahikoa komeri!"
Graffitiak ta pintadak ere,
edonon omen ageri:
oraingoz, behintzat, ezta faltako
dantza eta erromeri.



1
San Praixku jaien iturburutik
edan ezazue lasai:
edabe horrek, gehienez ere,
jarriko zaituzte alai;
herri osoko beharrizanak
aseko ditu, nolanahi.
Euskal giroan sakon murgilduz
zabiltzate musikaz blai.

2
Oraindik norbait egongo balitz
ezinbestean zalantzan,
erromeria ez da faltako
Aginako enparantzan.
Edonor jarri lezake eta
inpernuko hauspoak dantzan;
bakoitzak bere kuttun-kuttuna
aurkitzeko esperantzan.











1
Zorioneko frontoiarekin
nork ez du egina amets
batzuk zebiltzan sekula ere
ez zela egingo esanez.
Baina usteak erdia ustel
gertatu da, agidanez:
aurrera doa, nahitaez,
endredu asko emanez. [bis]
Erdi bukatu dutenerako
San Praixkuak, oharkabez,
jakin nahi nuke erabilgarri
Izango dugun ala ez. [bis]

2
Frontoi berria egin gabeko
onik ez genun izandu;
harrezkeroztik kritikarekin
ederki degu gizendu,
Baina, benetan, beharko luke
pilotarien zimendu;
meriturik ezin kendu,
zerbait egingo bagendu... [bis]
Pilota maite dugun guztiok
badugu, bai, hor zer landu:
gure "Ariztiko" bihur ez dadin
museotako harlandu [bis]

1

Urte osoko nekeak utzi
San Praixku jaien lazoan.
Ongi murgildu, trago ta trago,
alaitasun itsasoan.
Sorginduriko euskal giroan,
eromenaren basoan;
bada gorputza nola astindu
trikitiaren pausuan:
holako jairik ez baita sortu
oraindik mundu osoan.

2

Begira nago zer egosten den
San Praixku jaien eltzean:
osagarririk ez baita falta
bere ipurdi beltzean.
Inork probatu gabe ez utzi
tentazioa heltzean;
urte osoko neke ta estresak
uzten baititu atzean.
Halako poz bat kiribilduaz
norberaren bihotzean.

1
San Praixku jaien iturritikan
asebete arte edan;
bihotzarikan hotzena ere
jartzen baitu eguteran,
ilusioa ta alaitasuna
tinko txertatuz guregan;
urte osoko nekea arinduz
estresa badoa hegan.
Horrelakoxe sorginkeririk
ez da beste inon eman.

2
Baserritarrak, arrantzaleak,
nekazariak, harginak...
jaietan sartu burubelarri
ez du axola adinak;
sagardorikan ez da faltako,
zer esanik ez, sardinak,
bertsolariak, trikitilarik...
Nork ez ditu atseginak?
A ze menuak eskaintzen ditun
San Praixkuetan Agiñak.

1

Aginatarrok ongi-etorri
San Praixku jaien altzora:
eskaintzen diren altxor guztiak
zurrupatzera gustora,
ilusioa egingo baita
loreen gisa, birlora.
Bihotza dantza batean jarriz
poza espainetan gora.
Sei egunetan ailegatzeko
estasiaren kolkora

2

Jaien programa puztuta dator,
ekintzak dira demasak:
bertsolariak, herri-kirolak,
gainera umeen jolasak,
hamaiketako paregabeak
ta herri-afari basak,
erromeriak, dantza taldeak...
Ez dira izango eskasak
ilargipean bapo egiteko
izugarrizko gaupasak



1
San Praixku jaien bihotzeraino
Aginatarrok arrima,
gorputz osoan nabaritzeko
taupadatxoen kilima.
Berehalaxe esnatuko da
lokarturik dugun grina;
jai-giroaren sorginkeria
barneratuaz, jakina,
dantzan jarriko zaizkigulako
bihotza eta arima

2
Egitaraua azaltzen zaigu
ekitaldien esklabo:
oilasko biltze, kirol saioak,
herri-afaria hor dago;
bertsolariak, ume jolasak
erromeriak, oparo.
Txosnarik ere ezta faltako
hartzeko pare bat trago.
Kontzertuetan gorputza dantzan
ibili dadin oparo



## SAN PRAIXKUTAKO PIPARRAK GOGOAN

Doinua: Zortziko nagusia

1
San Praixku jaien antolakuntzan
buru-belarri saiatu;
ustez ongien ardurak betez
festak hasi ta bukatu.
Baina aitortu beharrak ditut
zenbait huts eta bekatu:
larriak ziren ala arinak
herriak beza juzkatu

2
Egun oso bat izaten genun
txosnetan jardun beharra;
bost-sei lagunez osaturikan
hori koadrilla edarra!
Baina neurgaitza izaten denez
maitasunaren indarra
trikimailu bat asmatzen nuen
bapo egiteko "piparra".

3
Neskatxek eta gau sorginduek
sortzen zuten pasioa;
zen menperatu beharko nuen
aspaldiko lezioa
gainditu ez ta itsu-itsuan
horra egin azioa;
lagunek lana gogor egin-ta,
niretzako funtzioa

4
Bederatzi urtez antolakuntzan
lanari fin nion ekin,
beste hiru urtez saiatu arren
konpromisoa desegin;
neska eder bat zain nuen eta
ez niezaiokeen hutsegin;
maitasunaren sehaskatxoan
zabuka hartzeko atsegin.

## GUDARI EGUNERAKO BERTSOAK [1992 ±]

1
Irailaren hogeita zazpi
dugu Gudari Eguna,
abertzaleak geran guziyak
gogoratu behar deguna
eta bakoitzak eman dezala
bihotzetikan ahal duna.
Gudari[a]k dira herri kondaira
ta herriko maitasuna.

2
Gudariak gaur nahi gogoratu,
lehengo eta oraingoak.
Hainbeste guda eginda gero
bidean ero[r]itakoak,
errefuxiatu ta deportatu,
ta barrun dauden presoak
eta kanpoan, hor dabiltzanak...
dira ta beharrezkoak.

3
Gudan hil zaigun guziarentzat
omenaldi bereziya,
edozein ez da herriagatik
ematen duena biziya;
izar ederrak bihurtu dira
botatzen dute argiya.
Euskal Herrian izango dugu
Gudari berrin haziya.

4
Garai bateko eta oraingo
gudariak dira piñak
ta herriaren kondaira seitu
arazoak dira berdiñak.
Euskal Herria libre izan arte
burrukatzeko egiñak,
beharrezkoak akabatzeko
etsaiak dituen grinak

1
Dispertsioa gorputz ta arimaz
etsaiak zuen prestatu,
bertan egosi zitalkeriak,
presoen aurka gauzatu.
Orduz geroztik urruntasunen
hatzetan dugu dantzatu.
Gure larruan zauria ez ezik
oinazea da luzatu.

2
Egoera da gogorra bezain
zekena eta bortitza.
Amets-gaiztoa desegiteko
borrokan gogor gabiltza.
Zuek kanpotik ta guk barrutik,
batera dezagun bultza,
uztarturikan lortuko baita
askatasunaren giltza.

3
Dispertsioak berakin dakar
gatiguaren mezua:
isolamendu ta jipoiketen
maiztasunaren pisua;
ziega estutan ezin emanik
aurrera-atzera pausua.
Babesgabeko bakardadean
eragin nahirik izua.

1
Kartzelariak datoz
militar pausoan,
aldarte lausoan;
harrokeria lagun,
hitzez erasoan:
"Modulo aldaketa".
Horra, hitz jasoan,
"di-da gauzak prestatu",
mehatxu goxoan.
Gu harrapatu nahirik
presaren lazoan.

2
Agintekeriarik
ezin dugu aproba,
uztazue albora;
elkarrizketarekin
zergatik ez proba?
Presaka ta muturka
ez goaz inora;
gauzak tajuz biltzeko
behar da denbora.
Pare bat ordu, hortxe,
nonbait, beharko da.

3
Elkarrizketan hasi
gara, eskuz esku;
gauza dago estu.
aguro konpontzeko
itxurarik ez du.
Beren hitz emateak
amarrua prestu,
erdibideko zerbait
diegu aurkeztu;
azkenik, "ordubete"
hitzez da adostu.

4
Gauzak poltsetan sartzen
bapo nabil, baina
ni nago apaina,
pilatzen ari zaizkit
harritzeko adina:
arropa, oinetako,
liburu bikaina...
Neure burua ezin
inolaz engaina
trailer bat betetzeko
badut, alajaina!

5

Gauzak sartu ditugu
Hamaika poltsatan
ta galtza motzetan;
garraiatzerakoan
izerdi patsetan.
Aspaldi aritu gabe,
lanketa latzetan.
Laster atera dira
kailoak hatsetan,
giharretako mina
aurre ta atzetan.

6

Kartzelari gehienak
zuriak hizketan,
pozoina zainetan:
mendekuzale hutsak
baitira, benetan.
Lotsagabe esan dit,
irria ezpainetan:
"txirmoniak izaten
dira ordainetan,
sartu zaitez, mesedez,
ziega honetan".

7

Ziegan sartu orduko
kuxidade latza:
ezin hartu hatsa.
Hemen sekula ez da
astindu erratza.
Beldurrak akabatzen
eman det urratsa.
Komunera arrimatu
eta... ze kiratsa!!
Pertsona nola leike
izan hain narratsa!

8

Korta txukuntzeari
berehala eutsi,
nahiz burua hautsi.
Fregona ta erratzari
dantzan erakutsi.
Bazter txoko guztiak
espartzuz igurtzi,
lixiba barra-barra,
xaboi eta guzi.
Zilarra bezain garbi
azkenean utzi.

9

Apaintzea dagokit
gutxika-gutxika,
ohetik hasita.
Argazkiak kortxuan
grapekin josita,
arropa, liburuak...
ez dira gutxi-ta.
Dagokien lekuan
dotore utzita,
beste itxura bat du
ziegak jantzita.

10

Modulo aldaketa
delako egina
emateko mina,
saiatu gara egiten
bidaia atsegina:
zirkoetarako prest,
umorearen grina,
gatza eta piperra
jarriaz, jakina.
Bikain gainditu dugu
gaurko etsamina!




Joxe Martin SAGARDIA 'USURBIL', Jose Luis SEGUROLA 'NAZKAZ' eta Joxe Mari ARANTZAZISTROKE 'ARRANTZALE' HILDAKO GUDARIEI OLERKIA. (1996ko abendua)

Ez zaitezte ibil gure hilobiaren bila
zeren ez baituzue aurkituko.
Gure eskuak beste eskuetan
tiraka doazenak dira;
gure ahotsa, oihuka ari dena,
gure ametsa osorik jarraitzen duena.
Eta jakin ezazue bakarrik hiltzen garela
zuek lasaitzen bazoazte,
zeren borrokan hil zena
lagun bakoitzean bizi baita

Iñaki ORMAETXEA, Patxi ITZIAR eta, Jokin LEUNDA,
DONOSTIAKO MORLANS AUZOAN 1991ko ABUZTUAN
HILDAKO GUDARIEI 10. URTEURRENEAN (2001).
Doinua: Mutil koxkor bat itsu aurreko

1
Hiru gudari hil zituztela
igaro da hamarkada,
Euskal Herria negarrez utziz.
Itzela aizkorakada!
Abuztuaren hamazazpia
omenaldi garaia da.
Euskal Herriko zeru-ortzian
hiru izarreko gaba:
Horra Iñaki, Patxi ta Jokin
gudari finen islada

2
Ahapaldiak errenkan datoz
buru barnetik ahora,
aberkideen oroitzapenak
galgatan ditut gogora:
itxaropena zabaltzen zuten
gure Euskal Herri osora.
Konpromisoan oso zintzoak
altxa nahi nituzke gora,
ene bihotzean habi egindako
udaberriko hiru lora.

3

Hamarkada bat igaro arren
ez ditugu, ez, aparte:
omenaldiek Ipar-Haizea
prexku-prexkua dakarte.
Jarrai dezagun gogoz beterik
borroketan hartzen parte,
bat bitez gure zazpi bandera
nahiz sasi-muga bitarte,
Euskal Herriak ez du bakerik
Euskadi askatu arte.



<Gaia: AMAREN HILETAN. Doinua: Leiho ertzetik Oñatiko
Joseba Arregi Erostarbe kideari eskainitako bertsoak

1
Lehenxeago egutera zen,
orain dena da laiotza.
Harmoniari gainditu zaio
goibeltasunaren bortxa;
isiltasuna bilakatu da
ziegan eresi hotsa,
begi-ninitan ostotsa,
negar batean bihotza. (bis)
Hitz egiteko gauza ez, baina
egin behar dut aitortza:
jakinarazi berri didate
nire amaren heriotza (bis)

2
Etzait samurra egiten ari
eguneroko borroka;
egunsentia ere sartzen da
burnileihotik orroka.
Heriotzak ez du desegingo
gu bion arteko soka.
Sentimenduen errota,
horniturikan dago-ta. (bis)
Esperantzaren deia ari zait
bihotzean ate joka.
Zure hiletara joatea da
nire biziko erronka (bis)

3
Jaengo espetxe honetan, azkar,
burkideak agurturik,
txapelokerrek furgoi batean
di-da batean sarturik,
hogeita zortzi urte ta gero
Euskal Herrira, hain justurik,
pazientzia harturik
zu ikusteko presturik. [bis]
Bidaia osoan zugan pentsatzen
indar guziak baturik,
maitasunaren zilborresteak
gaituelako uztarturik

4
Langraitzetikan Oñatiraino
zipaioekin: ze pasada!
Eskuburdinak estuki jarriz
aho betean erdara.
Furgoi barrura seinalaturik,
gupida gabe, bultzada.
Ziztun abiatu gara,
zelatan dut begirada. [bis]
Hain ezaguna egiten zaidan
paisaiaren azokara.
Herrira sartzen goazen heinean
gorantza doakit zirrara [bis]

5
Oñatin oinak jarri orduko,
jendetza ikaragarria.
Beltzek airean naramatela:
jendea da jazaria.
Zahar ta gazte, eskuk goratuz
Kantatuaz aberria,
askatasun egarria,
ez da eten lokarria. (bis)
Sentimenduak dantzan dabilzkit:
momentu hunkigarria.
Begietatik goxo sartu zait
ezusteko ongi-etorria. (bis)

6
Biharamuna ailegaturik,
gogoz kontra, elizara.
Aldare aurreko lehen bankuan
lau zipaio laga.
Ezagun, lagun, familiarrez...
dena lepo dago jada:
ikusmenaren ikara,
bihotza joaz aldaba. (bis)
Elizkizuna hastera doa
ta izango da, beharbada,
ordubete bat iraungo duen
estasiaren balada. (bis)

## Joseba Arregiren margoa

7
Egoera honek gaina hartu dit,
zurbildurik dut fatxada.
Odolik gabe ta izozturik,
ezin aurkitu patxada.
Sentimenduen, emozioen,
zirraren uholdea da.
"Desfilatuen" eupada:
maitasunezko taupada. (bis)
Elizkizuna amaitutzean
a ze txalo zaparrada!
Nonbait holako bost bizitzeko
mundura etorriak gara. (bis)

8
Hauxe izan da astebeteko
odisearen mentura
non, batzuetan, sumatu dudan
eromenaren estura.
Sentimenduak, norgehiagoka,
elkarren arteko guda;
bihotza askotan hustu da,
negua bihurtuz uda. (bis)
Bihotz-hondoan ainguratu zait
bizipen hauen lilura;
nire amatxo bihotzekuak
merezi duen modura. (bis).

TERRE under SPAIN 2003

## HAMALAU URTE GILTZAPEAN

(Doinua: Leiho ertzetik) 2005eko azaroa

1
Giltzaperatu nindutenetik
hamalau urtetik gora,
urte bakoitzak bere nekea
zabalduz bizkar osora,
sofrimendua tatuatuta
aurpegian egongo da...
baina nahi nuke gogora
akuilaturik ganora, (bis)
buru-belarri jorratzen nabil
orainaldiko denbora:
biharrerako loratu dadin
itxaropenaren lora. (bis)

2
Isolamendun nagoelako
egunsentia orroka,
lau hormatzarrok besarkaturik
naukate erdi itota;
bakardadea uxatu ezinik
gogor dabilkit mokoka,
kartzelariak zipoka,
isiltasuna ezin topa... (bis)
Denbora geldi-geldirik dago
loeri larriak jota.
Hauek guztiak gailentzea da
eguneroko borroka. (bis)

3
Bisitak, kartak, postalak eta...
maiz samar ditudanetan
begietatik tristura oro
desegiten zait bet-betan:
udaberririk ederrena lez
bihotza jarriz loretan.
Esango dut bi hitzetan
ibili gabe bitsetan: (bis)
kriseilu baten argi-izpiak
dira ziega honetan,
arnasa bezain beharrezkoak
jarraitzeko ametsetan. (bis)

4
Urtea joan urtea etorri,
egoera lazgarria
espetxetako zoko-mokotan
presoa da jazarria,
ideologia deuseztatzea
dutelako oinarria:
hauxe da negu gorria
non dago udaberria? (bis)
Kosta ahala kosta aurrera goaz,
kantatuaz aberria
infernu hontan ez baita agortzen
askatasun egarria. (bis)

1
Oritzapenak hamalau
urte egin dit atzera
ama ekarriaz zure
lehen bisita orainera.
Gogoangarria izaki
ezin dut utzi galtzera
sentimendu oro baitzen
txinpartarekin atera.
Irria ezpainetaratuz
olatu batean antzera
begi urdin-urdinetan
zenekarren primadera
ihintza loretan legez
sartu zena bihotzera.
Muga gabeko maitasun
garden-gardena zen bera.

2
Semearen egoerak
kontzientzia itzarri
"Etxerat"-en gogobetez
zabiltza burubelarri;
bihotzez eta arimaz
laguntza emanez elkarri
dauden zereginetara
joanez eredugarri.
Presoen eskubideak
dituzuenez oinarri
hileko ostiraletan
pankarta batekin jarri
zintzurra urratu arte
etenik gabe aldarri
semea nahi duzulako
etxe aldera ekarri.

3
Lekualdaketak dira
ohikoak espetxeetan
eta banaramatela
esan dizute bet-betan.
Poza ito egin zaizu
tristeziaren errekan
jipoituko ote nauten
izuak jota benetan;
aurrekoa gaur bailitzan
oroitzen duzu penetan.
Barrengo harrak egunez
etzaitu utzi baketan
begirik bildu ezinik
ibili zara gauetan;
beltzak ikusi dituzu
bizpahiru egun hauetan.

4
Telefonoz astero dut
zuri deitzeko ohitura
ta txintxo agertzen zara
biok dakigun ordura.
Bost minutuko saioa
bihurtzen zaigu mentura
amultsuki jositako
esalditxoen kontura;
kezkarikan ez dakizun
belarrietan aingura
hitzak bere biluzian
zugan sortzen du lilura
baldin semearen hotsak
badu pozaren preskura
bihotza zabaltzen zaizu
larrosa baten modura.

5
Autobusean sartuta
kartzelaraino aldatsa
ibilera gazi-gezak
sofrimenduak dakartza;
soinean atxikitzen da
dispertsioaren hatsa
errepidearen zamak
areagotuz zahartza.
Nahiz eta orpoz orpo izan
heriotz garratz-garratza
hauxe da zure hamalau
urte hauetako martxa;
behin da berriro eginez
sakrifikazio latza
semea ikustea baita
bidaia hauen ardatza.

6
Hasi baino etzaigu egin
aurrez aurreko bisita
non segunduak ihesi
doazkigun antxintxika.
Muxuak ta besarkadak
etorri dira jarraika
goxoki batzuk dastatuz
sofan bapo eserita;
denboraren oihalean
hitzak dotore josita
gailurrera iritsi da
giro magiko polita.
Bizipozaren askatik
zurruta eginez nahita
infernuaren zuloan
zorion tanta bat baita.

7
Agurraren momentuak
justu bi ordu pasata
begietara ekarri
digu malkoen enbata
masailetatik barrena
datozkigula tantaka.
autobusera berriro
zoaz tirriki-tarraka.
Nekeak menperatuta
baina beti bezain guapa
aguro ireki diozu
gogoetari ataka
hain harro baidabilkizu
bihotzean taupadaka
bisitako bizipenen
maitasunezko kantata.

8
Urtez urte jasan arren
mendekuaren pisua
ama ez dute uzkaili
zuk hartu konpromezua.
Hamaika eratan jarri
dizute estropezua
borreroengandik jasoz
dohaneko mesprezua;
zure ahotik, halaere
ez dut aditu kexua;
tinko darraizu egiten
iluntzero errezua
otoitzetan bidaliaz
maitasunaren mezua,
eramangarri dakidan
kartzelaldi konplexua.

1
Bertso eskolako lagun kideak,
nago pozez eutsi ezinik:
ez nuen uste horrenbeste "fan"
hor izango nituenik;
hogeita zortzi omen zaudete,
halaxe nago jakinik;
bertso baratza jarrai jorratzen
bihotzez diotsuet nik,
gure euskarak eta bertsoek
badaukate etorkizunik.

2
Argi ta garbi hitzegin asmoz
noakizue harira:
begiak ditut pozez beterik
zuen bertsoei begira;
abestu orduko joanak zaizkit
eztiki bihotz erdira,
miresgarria baita, benetan,
botatzen duten distira;
izar ta lorez beterik daude,
txit zoragarriak dira.

3
Nire bihotza taupada hotsez
jartzea lortu duzute,
"Xomorro" honi gaurkoan kasu
egin behar diozute:
egunen batean agertuko naiz,
tarte bat gorde zazute;
egun horretan bertso ta parrak
txit soberan dituzute.
Espetxe hizkeran esangoizuet:
pasako dugu "dagute".

4
Castilla aldetik agur bero bat
doakizue Usurbila.
Besarkada ere, iraultzailea
egin arte korapila.
Itzalpe hontan tokirik ezta
hortik kanpo äte pila,
baina, halere, ezin isildu
gure deiadar isila:
mantso badare jiraka doa
askatasunen gurpila

## NIKOLAS IZETARI BIDALITAKO BERTSO BATZUK (1992)

Doinua: Zortziko nagusia

1
Kaixo, Izeta, zer moduz dituk
horko egunak igarotzen?
Hire berriak jaso dizkiat;
biziki nauk alegratzen.
Kankailu hori betiko martxan,
ez haiz batere aldatzen.
Egin didaan bertso sorta hau
Bihotzez dit estimatzen.

2
Giro zital hau bizi ezean
zer den ez zitekek jakin:
oso gogorra suertatu arren
saiatu behar ta ekin;
azken borroka prestu diagu
gose ta egarri grebekin,
duintasunaren balioari
ateratzeko etekin.

3
Euskal Herria basamortua
bihurtu nahi, alegia,
etsaiak berak plangintzan zeukak
ez duk oraingo xedia.
Aspaldidanik galdua zeukat
poltroneruen fedia;
Borrokan jarrai beharra zegok
lortu artean geuria.

4
Hire jateko trebetasunak
ezautzen dizkit aspaldi:
orain angulak, gero txuletak...
amaigabeko jaialdi!
Edateko ere ez haiz hankamotz
sagardorikan badadi.
Erregimena egin nahi badek
honuntza etorri hadi!

5
Lurbira osoan gizaki orok
bere auziak baditu;
beraz, laguna, entzun iezadak,
zera nahi diat argitu:
aldizka-aldizka gogoratzeak
zeukak itzela meritu
eta, zalantza izpirik gabe,
bikain asko dek konplitu

1
Besarkada bat, bihotz-bihotzez,
hasiko natzaik emanez;
liluraturik gelditua nauk
bertso hoien esanahiez:
nire barnean jasoko dizkit
gustoz eta atseginez;
egiten diat gaur zinez
betiko zintzotasunez (bis)
iluntasun hau argitu baitek
bertso-sortaren distirez
izugarrizko arnaskada dek
lehen nitxoan itomiñez (bis)

2
Erran zaharrak, edo atsotitzak
honelaxe omen dio:
"txoria bapo mendian dabil
hegaz, kantan oso iaio".
Baina kaiola kantatzekoa
ere iruditzen zaio;
kantua dela medio
penak arintzen zaizkio. (bis)
Gure kaiolak kantatzeko ere
ez ote du, ba, balio?
Askatasuna kantatuko dut,
ez dut beste erremedio (bis)

3
Egoera hau ezin dut esan
ez denikan txit mingotsa;
garaiak dira Euskal Herrian
sartu zitzaigula gaitza.
Zenbat gizaldi gure etxean
nagusi dela arrotza!
Hau da panorama latza,
gudariz hilda baratza! (bis)
Gure bihotza berotzen dabil
hildako lagunen hatsa;
berotasuna damaigu eta
ezin galdu esperantza (bis)

4
Lagun-minaren aholku denak
beti dizkiat goguan,
nagoen lekun egonagatik
nola ez hartu kontuan!
Etsaia dabil zirikatutzen
bere gaizto empeñuan,
otso beltzaren moduan.
Buru-hotz behar, orduan, (bis)
ezarri nahian zigor zeldetan,
gero isolamenduan.
Txapela tinko defenditzen deu
duintasunaren buruan. (bis)

5
Hain maite nuen Euskal Herritik
eman ninduten aparte;
ziega ilun batera sartuz
egin nahian min ta kalte.
Hala ta guziz indartsuago
Euskal Herria dut maite
bihotzean borondate
edozerarako aldarte. (bis)
Gogor nabilek euskera lantzen
eta kirola pasarte.
Gure asmoak garbiak dituk
Herria askatu arte (bis)

6
Azken koplari ireki nahirik
agurraren leihatila
"Joxe-Miel" txit lagun jatorra
primeran izan dadila.
Ezin ahaztu begi aurrean
ditudala kate pila:
atez-ate maratila,
txarrantxa zarpail-zarpaila. (bis)
Hala ta guztiz ezin isildu
gure garrasi isila:
ilunpeetan nabigatuaz
askatasunaren bila (bis)

## LAXARTE LAGUNARI GAZTERIARI BURUZ BIDALITAKO BERTSOA

Azken bertsoa gogo sutsuan
hemen datorkit ahora:
haize prexkoak zabaldu dezan
gure Euskadi osora,
mendebaldera eta ekira,
berdin ipar ta hegora;
gazteria dut gogora,
etorkizunaren lora (bis)
Euskal Herria biziki maite
ta aberria adora,
kontsumismoa auziperatu
ta hizkuntza altxa gora (bis).

## LAXARTERI BERTSO BI

Doinua: Iparragirre abila dela

1
Itxaropena ardatz hartuta
segi behar gureari;
giroa latza izanagatik
gogor eusten gaituk ari;
eutsi umoreari,
ekin bertso kantari,
ongi dakiken moduan:
egun batean izango gaituk
bertso-afaritan, onduan

2
Ikusten denez, bertso kantari
erraz aski naiz luzitzen.
Hire iturria oparoa duk,
jarioa ez zaik amaitzen.
Jakituria biltzen
asko hintzen ibiltzen
familiaren gerizan:
"nolako egurra halako ezpala"
hirekin esan da izan.

1
Urriaren hogeita hiruan
omen dago jaialdia
aspaldin ez zen egin izango
horrelako ekitaldia.
Nik ere inolaz ez dut galdu nahi
horko marka ta umoria
bertsoetan bidaltzen dizuet
bihotzez nire irria.

2
Eguneroko jardun aldian
eguneroko erronka
bateraturik joaten dira
bai martxa ta bai borroka
etsaia ez bait da aspertuko
ustez kopetian joka
Jarrai lanean lortu artean
askatasunaren soka.

1
Ezkontza honek xarmatik badu
udaminaren argian;
trikitixak (e) adierazten du
doinu alai ta garbian:
Eñaut ta Olatz aurkitzen dira
zorionaren erdian;
bihotzak ongi zaindu, gordian,
bide berriari aurre egiteko
maitasunaren gurdian.

2
Egun handian murgildu dira
Olatz ta Eñaut gaztiak;
alaitasunez mozkortutzeko
dituzte dote guztiak.
Zoragarria izan behar du
horiek dantzan ikustiak.
Irudi hauxe islatzen die
begi-ninien eztiak:
"Maitasunaren errekan dabiltz
goitik beheraino bustiak."



1
Joxe Manuel ta Mari Jose
ezkontzan biziki gora.
Bion artean osa duzue
maitasunaren larrosa.
Eraztun bana elkarri jarriz
uztartu gogoz bihotza,
gaurko eguna izan dadila
bizi osorako poza

2
Ezkontza honek egunsentiko
lilura berezia du:
maitasunaren eguzki-printza
igo da bi mila gradu;
murgil zaitezte zorionean
eta edan traguz tragu.
Zuen bihotzen agindutara
baitzabiltzate ondradu.



1
Isilik ezin egon naizenez
hemen natorkin koplari:
berriro ere jaso baitinat
otarra bete opari;
buru-bihotzak pozez gainezka,
dantzan jotake naun ari
gorazarrea eskeini asmoz
gure adiskidantzari;
aspaldi baitin zulo honetako
ilunpean egin kabi.

2
Postal polita eskutan eta
irrifarra ezpainetan;
Kandi laguna, detailetxoa
eskertzen dizut benetan;
kriseilu baten argia baita
ziega ilun honetan
ilusioa dakarrelako
ongi josita hitzetan:
arnasa bezain beharrezkoa
jarraitzeko ametsetan

3
Bihotz hondoan geratzen zaigu
korapilaturik mina,
gutxien uste dugun unean
estutzen gaitun samina;
goibeltasunak jango gintuzke
lo geratuko bagina,
baina eguzkiak nola lanbroa
gailentzen da udamina;
urdin kolorez berriro jantziz
bizigogoaren grina.

MANUELTXO

Txoritxo bati ziot entzuna:
aizak, Manueltxo, nire erantzuna:
Araotz omen, negu beltzean,
oilagorren erresuma. (bis)
Eskopetaren marruma,
nagusiaren erreuma;
ez ote da garizuma?
Ez duk samurra berreskuratzen
ehiztariaren fortuna
Herrera aldera ez dek agertu
muestretarako luma (bis)

"ASKA"

Xomorro honi etortzen zaizkak
izugarrizko ideiak.
"Aska" laguna, arreta jartzak:
utzi pakean hodeiak;
ezinbesteko galdera hauxe
eskatzen dik gaurko lehiak:
"zenbat errape izaten dizkik
baserritarraren behiak?"

JOSEBA

Joseba burkidea:
milesker, lehenbizi.
Xomorrorentzat baituk
bertsoa gutizi.
Maitalea bailitzan
ezin nauk bereizi
doinua ta neurria,
errima ta guzi.
Koplarik gabe ezingo
nindukek bizi.



Bertsoz josirik ikusten diat
"bapatean" eltzea
eta onena izango diat
gerritik goxo heltzea;
aurreak ongi erakusten dik
nola dantzatu atzea,
berdin duk saltsa, sanba edota
trikitiaren baltsea
etzaidak asko kostatu behar
gozamenera heltzea.



Ilargia ta biok elkarri begira
horra lilura sartu ziegan erdira.
Nik begiak kliskatu eta berak distira
maitale bakartuen enkontruak dira.

## Ilargia

Ziegan dudan mahai ertzeko
ipurtargira hurbildu:
paper polit bat eskuratuta
inspiraziora amildu;
sentimenduak ezin baitira
hormen artean isildu,
samurtasunez harildu
ilusioetan bildu. (bis)
Bertso-sorta hau egingo dizut
bihotzean kiribildu,
irakurtzean egin zaitezen
zorionean murgildu. (bis)

Hodei bat ere agertzen ez den
ekiaren abaruan,
edertasunak gaina hartzen du
soineko urdin klaruan;
sentimenduak dantzan dabiltza
haizearen anparuan,
taupada askoren beruan:
berdin uda ta neguan. (bis)
Gau sorginduan ilargitikan
eskegirikan, zabuan,
bion artean eraikitako
maitasunaren zeruan (bis).

Txaluparikan ez dago baina
txarrantxak olatu itxura;
hankatik gogor lotuta daukat
hamar tonako aingura.
Hormaturiko itsaso mota hau
mundun inork ez du gura.
Ilargiak gaur eramango nau
ametsaren erreinura

---

Ilargia mezi duzu,
Laudoriozko hainbat hitz.
Zeru gaineko enparantzan
zara desioen irrits;
dantza betean zabiltza
izarrak dirade aunitz.
Ai, zure keinu ezti bat
niregan sortuko balitz!
Sentituko nintzateke
zabuka dabilen haritz.
Sormenaren bidetxorrak
metafora bila dabiltz
Askatasuna nintzake
zerori izango banintz;
utopia zergatik ez
egi izatera irits.

## MAGALERA (Olerkia)

Zelatu gabeko
fantasiaren zaldi basatiak
bakardadearen ispiluko
bidezidorretik barrena
lauhazkan narama.
Ene begiek dakusaten
zeru puskan
aurkitzen diren
ilargi biribilaren
izar distiratsuen...
magalera.



## ILARGIA (Olerkia)

Eguzkiak lotarako
begia itxi duenean
ilargia lerden agertu zait
bere soineko beltz
izartsua jantzirik,
ziegako burni-leihora.
Bere edertasunaren magiak
maitalearen pasioz
behin ta berriz
muxukatu nauelarik;
begiraden eta keinuen
lengoaia erabiltzea
aski izan dugu,
biok egun osoan
bortizki pairatu dugun
bakardade bihozgabea
errukirik gabe birrintzeko.

1
Euskal Herriko herrialdeetan
euskara gaixorik dabil,
hiriburuan negar dario,
aurpegia dauka zurbil:
Iparraldean ez ote dago
heriotik oso hurbil?
Zaindu dezagun momentu oro
besotan ez dakigun hil,
lana eginez, inurriak lez,
txintxo-txintxo eta umil.

2
Euskararentzat oraingoz ezta
ez bake ta ez justizi;
bere etxean maizter daukate:
hori ez al da minbizi?
Beharko da, bai, oinarri sendoz
finkatzea lehendabizi,
ahaleginak ez daiten falta
lan egiteko bizi-bizi:
"euskaldun jaio, euskaldun hazi,
euskaldun gaitezen bizi".

3
Festa eder hau zertan datza?
Arrazoia da zehatza:
suspertu eta jorratu nahi da
euskaldun baratza;
eginkizuna da latza,
beharko piper ta gatza.
Gaurkoan behintzat ez bedi falta
bertso eta dantza

1
Askotariko euskal kulturak,
zazpi probintziak bildu:
bakoitza bere nortasunakin
buru-belarri murgildu;
arragoaren txinpart- nabarrak
inoiz ez daiten itzaldu;
sortzen den uzta lau-haizetara
alaitasunez zabaldu.

2
Zazpi lurraldek osatutako
kulturaren baratzea
ez da samurra denen gustura
orekatsu jorratzea;
aberastasun iturria da
eskarmentuk trukatzea;
aurre aldeak erakusten du
nola dantzatu atzea.

3
Euskal kultura berrindartzeko
zeregin ugari, antza;
aldapa gora aritu arren,
ezin galdu esperantza.
Uztar lanean aritutzeak
berez dakar konfidantza,
urratsez urrats egiten baita
bikaintasunaren dantza

4
Zergatik jardun trabak ipintzen
eta beti erasoan?
Askoz hobeki konpondu leike
arituz era goxoan.
Etorkizuna eraiki behar
oso modu erosoan,
hainbat txalupak osatutako
kulturaren itsasoan.

5
Ahalegin hortan zabiltzatenoi
bereziki, goraintzia:
antolatu den ekitaldiak
nahiaezko garrantzia.
Elkartasuna motorra dela
ez dago, ez, ahantzia:
gaurko eguna izan dadila
kulturaren irrintzia



1
Mapil harturik gaurko hizpide,
kontakizun eta gaia,
historian zehar zer garrantzia
izan duen behar naiz saia.
Antzin-antzinan ontziola bat
izan zeneko garaia
tokia berez lasaia
egur enborren usaia,
alboan dauka Uriberri ta
Mapilerreka anaia:
igurtzi eztiz pasatzen zaio
gure Oria ibaia

2
Ontziola zen garai haietan,
bazuen nahiko ospea,
gaur egun arte harrotasunez
ederki asko gordea.
Mundun besterik izango al zen
Mapilen baino hobea?
Hor zen langile trebea,
bizkor ta paregabea...
Mundu guztitik izaten zuten
izugarrizko eskea,
edozein ontzi egiten baitzen
egurrez eta merkea

3
Fama kontua inolaz ere
ez da alferrik izaten,
erregearen armada ontziak
egin baitziren Mapilen.
Irisasiko egurrez denak
eginak izan bai ziren:
hara gauzak nola diren!
Agertzen da zenbait izen,
Kristobal Kolon berbera ere
hemendik ote zebilen:
"Maria Galant" ontzia ere
bertan egina omen zen.



1
Muino polita, xarmangarria
da gure Antxamalantxa
ta historia izango duela
ez dut egiten zalantza.
Sorgin ugarik egingo zuten
franko salto eta dantza,
nahiz egin egurats hotza
edo goizean izotza;
zelai erdian adoratzeko
aker beltzaren bihotza.
Eguzkia're hortik sortzen da
emanaz lehen urratsa.

2
Birigarroak eta zozoak
kantari dabiltza sarri:
Iruntxo Zahar ta Iruntxo Berrin
horrela dira iratzarri.
Hegaztientzat pasabidea
dela nork ez du igarri?
Pasatzen da izugarri,
naturaren gozagarri,
bidezidorrak zeharkatzen du
eginaz erakargarri.
Antxamalantxak eskaintzen ditu
hainbat txoko zoragarri

3
Haurtzaroko pasarteetan,
Antxamalantza goguan,
zenbat ibili egin nituen
ezin harturik kontuan!
Errekreora irten orduko
bertara behar gendun juan;
haizea zegon orduan
aeroplanoen moduan:
baloian eta kirkir bilatzen,
txiria sartuz txuloan...
une haietan zoriontsuagorik
egongo al zen munduan?

## ORIAKO KOARTZAK (1995)

1
Oria ibaia bere sortzetik
dugu oso aberatsa:
karramarroa, lupi, izkira
ta korkoi, angulen hatsa...
hegaztientzat bihurtu zaigu
mokau goxoen baratza.
Nork ez du inoiz ikusi izan
legar ertzean koartza?

2
Hegazti hauek, beste hainbatez gain,
hartzen ditu bere altzoan
eta elikatzen dira guztiak
Oria iturri oparoan.
Iluntzean lo bapo egiteko
alboko panpanondoan
jarrai bezate bere horretan
orainan eta geroan.

3
Errioa, beraz, bilakatu da
koartza askoren seaska;
bikote batek habian dauzka
hiru bat kume belaska
ta hor dabiltza ibai joritik
ekarriaz nahiko bazka,
kume gaixoak sendo daitezen
hasteko laster hegazka

4
Hazi dira ta hegan dabiltza
batera eta bestea;
Txorkora orain, Mapila gero,
berriz, zingira parea.
Ikuskizun hau zoragarria,
mundun besterik badea?
Adiskidea, izan gaitezen
fauna ta naturzalea

## BAKARDADEA

Lau hormatzarron artean
bakardadearen itzala;
atsedenik gabe alderrai dabil,
mamu bat bailitzan,
desapioaren aurpegia
begietan itsatsita duela.
Eta bere menpeko nahi zaituela
dioten begirada zorrotzak
ez direnean, edonork
desanimatzeko moduko
garrasiak eginez agertzen da,
negar batean dagoen umeari lez
bihotza xamurtuz, urrikal zakizkion.
Arren!! Ez erori tentazio horretan,
bihotza lapurtuko baitizu,
bere gupidagabeko kaiolan,
betirako ezarriz.

## TRISTURAREN LANBRUA

Hamaika arrazoi direla medio,
tristuraren lanbruak
gure bihotz handiaren dohainak
ezkutatzea lortzen du,
ziurtasunik gabeko pausoak eginaraziz.
Erromesean gabiltzan, denbora
basamortu bat gurutzatzea bezain luze
suertatzen zaigu, zoritxarrez.
Dena dela, ezin ahantzi
basamorturik basamortuenean ere
ihintza present izaten dela
gauaren sabel izarratuan:
tanta horiei esker loratzen baita
berriro ere itxaropenaren lorea
gure bihotzetan.

## UDABERRIA

Udaberriaren erditzeak
ziega ilun honetako
lau hormatzarrak
argiz zipriztintzea dakar.
Eklosio horren sehaskan
goizero-goizero egunsentia
aurpegi alaiz agertzen
zaidanean, nire begiak
piztu egiten dira, irrifar bat
ezpainetaratzeaz batera.
Gure bihotzeko itxaropenaren
loreak horrelako poz tantak
jasotzen ditu, lekurik
zitalenean ere, bizipoza
ekartzen badakielako
naturaren mintzoak.

## KRABELINA BELTZA

Zu zara ene bihotzeko
krabelina beltza.
Ene grinen eta desioen
lur emankorretan
loratzen ari den
lore basatia,
gau oskarbietan
zabal-zabalik
izaten dituzun
petaloetatik
isuritako lurrinaz
sorgintzen nauzun
bitartean,
maitasunaren ihintzaz
blaitzen zaitudana.



## BEGIRADA

Zure begirada liluragarriak
nirearekin bat egiten duenean
tximistaren pareko zartako batek
astintzen nau, burutik oinetaraino.
Tristuraren bidetxorrak
desegin egiten dira
pozaren bide zabaletan.
Irriñorik laburrenak ere
gailurra ukitzen du
eta zure begi-ninietako
iturriekin igeri
egiteko irrikak
gainezka egiten dit bihotzean.

## ZURE BEGIRADA BAKOITZA

Duela bi urte
zure begirada bakoitza
xiri-miri tanta bat
bailitzan erortzen zen
idorteak jotako
ene bihotzeko errekastora.
Iaz, lau urtaro oparoetan
egonarriz eta emeki-emeki
isuritako tantek
ene bihotzeko errekastoa
erreka batez erditu zuten.
Aurtengoan, berriz,
udaberriaren jaiotzarekin bat
errekak gainezka egin du,
ene bihotza
maitasunaren itsasoa bihurtuz.

Zure begi urdinetatik,
udazkeneko hostoen gisa,
erortzear zegoen malko tanta bat
eskutan hartu nuen.
Tristuraren mantuak bildutako
zure ezpain marduletan
deliberatuki pausatzeko.
Nekez pentsa nezakeen ordea
ondoren eskainiko zenidan irriak
bere altzoan
maitasunaren hazia zekarrenak
ostatu hartuko zuenik
ene bihotzaren kabian.





Xabier Aranburu Muguruza aginagarrak hamabost urte darama espetxean.
Garai horretan egindako bertsoen eta hainbat olerkiren bilduma dugu honakoa.

*Izar artean ze distiratsu*
*keinuka ilargi sorgina*
*Bere altzoan eramaten nau*
*ia gauero Agina*







